## Frantzia

Frantses estatuko euskal preso politikoak apirilan hasi ziren frantses gobernuari euskal herrian edo euskal herritik gertuen dagoen espetxera eramateko eskaera helarazten

Gaur egun ez dute erantzun idatzirik jaso.

Bestalde nahiz eta ofizialki erantzunik ez izan, azken hiru hilabeteetan mugimendu batzuk izan dira

Hoietariko bat positiboki baloratu dezakegu bi preso euskal herritik hurbilen dagoen Mont de Marsan eko kartzelara eraman baitituzte (2014.05.23).

Beste mugimenduek aldiz, azken urtetan emandako lekualdaketak baino ez dira :
Bata Fresnes etik Marseillara, Tarascon era joateko
Lannemezan-etik Lille era nahiz eta epe motzeko aldaketa izan (ez du kentzen aldaketa hori askoz hurbilago izan zitzakela)
Hiru la santétik Poitiers Vivonne era (2014.6.5) (jakinik pariseko kartzela itxi behar dutela)
Bestalde notifikatutako destinoek, ohikoak, ez dituzte presoak gerturatzeko asmorik dagoenik erakusten.

Mont de Marsan era bi euskal preso eraman izanak (nahiz eta dagoeneko bat ez dagoen, estraditua eta libre gelditu baita) argi uzten du, nahi izanez gero ez dagoela pratikan arazorik euskal presoak euskal herritik hurbil kartzelaratuak izateko. Berriz, argi utzi behar delarik hau legea betetzea besterik ez dela.

## Espainia

Espainiar estatuan dauden euskal preso politikoei dagokienez, ekaineko lehen hamabostaldi honetan Zaballako espetxera eramatako azken eskariak burutuko dira, bere egunean iragarritako banakako eta txandakako traslado eskariak betez.

Espainiar espetxe administrazioa ez da egindako eskaerei berariazko erantzunik ematen ari. Espetxeetako Tratamendu Batzordeek preso bakoitzaren klasifikazioa aztertzean, klasifikazioa gradua berraztertzea ez dagokiela eta espetxe destinoaren aldaketa ez dagokiela ari da jakinarazten. Egun, ukatuak izan diren 20 bat jakinarazpen jaso ditugu.

Ezezkoaran argudioak berdin-berdinak dira kasu guztietan:

- Desegin ez den erakunde batekin erlazioa duten egitateengatik kondena betetzen ari direla.
- Espetxean ETArekin lotura mantentzen dutela.
- Erantzuna gaixotasuna edo 70 urte baino gehiago izateak ez dela eskaera onartzeko nahikoa funtsa, espetxe zigorra betetzeko bestelako formulak aztertzeko haina (gogora ekarri behar dugu, EH-ratze eskaeraz gain gaixo eta 70 urtetik gorakoek Espetxe erregelamenduaren 100.2aren aplikazioa eskatzen zutela, espetxealdi arindua nork bere etxean betetzeko aukera)

**Eskaeren edukia**

Gogoratu behar dugu egindako eskaerak hiru ataletan banatuta daudela. Lehenengoan arrazoi pertsonalak azaltzen dira; bigarrenean, politikoak; hirugarrenean, juridikoak:

1.- Espetxe politikak norberarengan zein familiarengan izan duen eraginaren berri ematen du preso bakoitzak lehen atalean. Kartzelan zenbat urte daramatzan, urte horietan zenbat eta zein espetxeetan izan duten, eta horiek bere etxetik zenbat kilometrotara dauden. Sakabanaketak presoarengan zein haren senide eta lagunengan izan duen eragina ere azaltzen dute arlo pertsonalari dagokion atalean: familiari zenbateko gastu ekonomikoa ekarri dion, istripurik eragin dion eta hurkoekiko harremana zenbateraino mugatu duen, esaterako.

2.- Arlo politikoari dagokion atalean, EPPK-k hartutako bidearen berri ematen diete presoek espetxe arduradunei: Ezker abertzaleak adostutako estrategiarekin bat egiten dutela azaltzen dute, Euskal Herrian sortu den egoera berriaren aldeko jarrera agertzen dute, eta, aurrera begira ere, gatazkaren konponbidearekiko konpromisoa adierazten dute baita norabide honetan urratsak egiten jarraitzeko asmoa dutela. Ildo horretan, EPPKren azken adierazpenekin bat datozela adierazten dute.

3.- Ikuspegi juridikoari ere heltzen diote. Estatuko eta Nazioarteko legedian jasotako eskubieetan oinarritzen dira beraien eskaerak egiteko, 11 legezko aginduak aipatzen dituztelarik, jarraian Giza Eskubideen alorrean lan egiten duten Nazioarteko Erakunde, Relatore eta Elkarteen txostenak aipatzen dituzte eta bukatzeko Europako Giza Eskubideen Epaitegiko jurisprudentzia jasotzen dute. Gainera, ohartarazten dute sakabanaketa politikak ez duela mundu osoan legezko esparrurik.

## Emandako erantzunen balorazioa

Espainiar Gobernua ematen ari den erantzuna onartezina iruditzen zaigu:

- Ikuspuntu juridikotik astakeria bat da: presoei egindako eskaerei erantzunik ez emateaz gain (arau juridikoetan oinarritutako alegazioak egin baitituzte, besteak beste), legaltasunetik eta presoen oinarrizko eskubideak arautzen dituzten nazioarteko arauetatik kanpo dauden arrazoiak erabiliz erantzun baitute.
  Berretsi behar dugu oinarrizko eskubideen errespetuak ezin duela desegite, barkamen edota bestelako konturen arabera baldintzatua egon. Eta ezin da horrela izan, ez duelako inolako lege eta zentzu oinarririk horretarako.
- Ikuspuntu humanitariotik, eskrupulurik ez duen Estatu baten ezaugarri da, presoekiko krudelkeria eta sufrimenduaren mantentzearen aldeko apustua berresten duelako.
- Politikoki onartezina da, lotsagarria baita bere burua demokratikotzat duen Estatu batek, sakabanaketaren bidez preso eta beraien senide eta lagunen gaineko indarkeria mantentzea.

Frantziar estatuan espetxeraturik diren presoei dagokienez, zenbait kasutan bi hilabete pasa direnez eskaera luzatu zutenetik, dagokion helegitea aurkezteko aukera zabaltzen da. Estatu Espainolean dauden presoen kasuan, Espetxe Zaintzako Epaitegi Zentralera jotzeko aukera dugu.

Datozen asteetan gure indarrak helegite hauek prestatzera bideratuko ditugu eta hauek aurkezten direnean kontu emango dizuegu.

Larriki gaixorik dauden presoen kasuan Justizia administrazioaren aurrean aurkeztu ditugu dagoeneko dagozkien helegiteak. Horrela, Zaintzako Espetxeko Epailearen aurrean helegitea tartekatu dugu kasu batzuetan eta hoiek ebazteko zai gaude: Txus Martin, Aitzol Gogorza eta Ibon Iparragirre dira kasu horiek. Ventura Tomeren kasuan Entzutegi Nazionalean zigorraren suspentsioa eskatuta dago erabakiaren zai.

Ibon Fernandez Iradiren kasuan, Frantziar espetxe batean dagoena zigorraren suspentsioa eskatu zen, maiatzan bista egin zen eta urrengo ekainak 20an erabakiko du epaileak.

**Deialdia**

Azkenik, komunitate juridikoari deia luzatu nahi diogu, bakoitzak ahal duen neurrian eta egokien ikusten duen eran, izaera politikoa duen neurri honen kontrako jarrera adierazi dezan, sakabanaketaren kontrako jarrera, alegia. Jada, denbora gehiegi aplikatu den neurria da, aurten 25 urte bete dira indarrean jarri zenetik, eta preso eta beraien senide eta lagunen kontrako sufrimendua eta indarkeria mantentzea suposatzen du.

Euskal Herria, 2014.06.10